# URTEAN ZEHARREKO XXIV. DOMEKA
## A urtean

### I. IRAKURGAIA

*Parkatu lagun hurkoari egin deutsun iraina,*
*eta, zuk erregutzean,*
*parkatuko deutsuz Jainkoak be zeure pekatuak.*

Siraken liburutik

*Si* 27, 33–28, 9

Amorrua eta hasarrea higuingarriak dira;
horreetan maisu da gizon pekataria.
Bengantzaz jokatzen dauanak bengantza jasan beharko dau,
pekatuen kontu zorrotza hartuko deutso.
Parkatu lagun hurkoari egin deutsun iraina,
eta, zuk erregutzean,
parkatuko deutsuz Jainkoak be zeure pekatuak.
Gizaki batek, amorrua badeutso beste bati,
zelan eskatu deikeo Jaunari osasuna?

Bere kidekoari errukirik ez deutsonak,
zelan eskatuko dau bere pekatuen parkamena?

Gizaki huts besterik ez danak amorruari eusten badeutso,
nork lortuko deutso bere pekatuen parkamena?
Gogoratu amaiera eta egin uko gorrotoari;
gogoratu ustelkeria eta heriotza,
eta jarraitu leial aginduei.

Gogoratu aginduak,
eta ez izan gorrotorik lagun hurkoari;
gogoratu Goi-goikoaren itunaz,
eta ez hartu iraina kontuan.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 103 [102], 1-2. 3-4. 9-10. 11-12 (R/. 8)

R/. **Bihozbera eta errukiorra da Jauna,**
**hasarregatxa eta onginahiz betea.**

V/. Bedeinkatu begi nire arimak Jauna,
nire barru osoak haren izen santua.
Bedeinkatu begi nire arimak Jauna,
ez bedi ahaztu haren mesedeaz. R/.

V/. Erru guztiak deutsuz parkatzen,
gatx guztiak osatzen;
zure bizia hilobitik askatzen dau,
maitasunez eta errukiz koroatzen zaitu. R/.

V/. Ez dau eten barik auzitan jarduten,
ez dau hasarrea betiko gordetzen.
Ez gaitu erabiltzen gure pekatuek merezi lez,
ez deusku ordaintzen geure erruen arabera. R/.

V/. Zelan zerua lurraren gainean garai,
halan haren maitasuna begirune deutsoenentzat handi;
zelan sortaldea sartaldetik urrun,
halan ditu harek gure hobenak gugandik urruntzen. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Nahiz bizi nahiz hil, Jaunarenak gara.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

*Erm* 14, 7-9

Senideok: Gutariko inor ez da beretzat bizi, ezta beretzat hiltzen be. Bizi bagara, Jaunarentzat gara bizi, eta hiltzen bagara, Jaunarentzat gara hiltzen. Beraz, nahiz bizi nahiz hil, Jaunarenak gara.

Honetarako hil eta biztu zan Kristo: hildakoen eta bizien Jauna izateko.

Jaunak esana.

## Aleluia

*Jn* 13, 34

R/. **Aleluia.**
V/. Agindu barria emoten deutsuet, dino Jaunak:
maitatu dagizuela alkar,
Nik maite izan zaituedan lez. R/.

## EBANJELIOA

*Zazpi bider bakarrik ez,*
*baita zazpitan zazpi mila bider parkatu behar dozu.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 18, 21-35

Aldi haretan, hurreratu jakon Pedro Jesusi eta itaundu eutson: «Jauna, nire senideak bidebakokeriaren bat egiten badeust, zenbat bider parkatu behar deutsat? Zazpi bider?»

Jesusek erantzun eutson: «Zazpi bider ez, ezpada ze zazpitan zazpi mila bider. Hatan be, bere morroiakaz kontuak garbitu gura izan zituan erregeagaz bezala gertatzen da zeruetako erreinuagaz. Kontuak garbitzen hastean, dirutza itzela zor eutson bat ekarri eutsoen. Eta nondik ordaindurik ez eukanez, bera eta emaztea, seme-alabak eta zituan guztiak saltzeko

agindu eban nagusiak, zorra ordaintzeko.

Morroiak, orduan, nagusiaren oinetan ahuspezturik, arren eta arren esaten eutson: “Emoidazu astia eta dana ordainduko deutsut”. Nagusiak, errukiturik, dana parkatu eta libre itzi eban morroia.

Baina morroi harek berak, urten orduko, diru apur bat zor eutson bere morroilagunagaz topo egin eban, eta, samatik heldu eta ito beharrean, esan eutson: “Ordaindu eidak zor deustana”. Lagunak, oinetan ahuspezturik, arren eta arren esaten eutson: “Emoidak astia eta dana ordainduko deuat”. Baina besteak ezetz, eta joan eta kartzelan sartu eban, zorra ordaindu arte.

Beste morroiak, gertatua ikusirik, mindu-mindu egin ziran, eta nagusiagana joan eta gertatuaren barri emon eutsoen.

Orduan, nagusiak morroiari deitu eta esan eutson: “Morroi gaizto hori! Horrenbesteko zorra parkatu deuat nik, eskatu deustalako; ez ete zan bidezkoa heu be heure morroi-lagunaz errukitzea, neu hitaz errukitu nintzoan

lez?” Eta nagusiak, hasarre bizian, borreroen esku itzi eban, zor guztia ordaindu arte.

Zeuoi be gauza berbera egingo deutsue zeruko nire Aitak, senideok alkarri bihotzez parkatzen ez badeutsazue».

Jaunak esana.

# URTEAN ZEHARREKO XXIV. DOMEKA

## B urtean

### I. IRAKURGAIA

*Lepoa eskeini neutsen jotzen ninduenei.*

Isaias Profetaren liburutik

*Is* 50, 5-9a

Jainko Jaunak belarria edegi deust,
eta nik ez deutsat aurka egin, ez atzera jo.
Lepoa eskeini neutsen jotzen ninduenei,
matrailea, bizarretik tiraka ebilkidazanei.
Ez neutsen aurpegia alboratu irainei eta txistuei.

Jauna dot laguntzaile;
horregaitik, ez naz kikildu;

horregaitik gogortu dot aurpegia, hatxa lez,
badakidalako ez nazana lotsagarri geratuko.

Ondoan dot defendatzailea: nork eroan ni auzitara?
Aurkeztu gaitezan alkarregaz!
Nork dau nigaz auzirik? Datorrela!
Hara, Jainko Jauna dot laguntzaile: nork kondenatuko nau?

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 116 [114], 1-2. 3-4. 5-6. 8-9 (R/. 9)

R/. **Ibiliko naz Jaunaren aurrean,
bizidunen lurraldean.**
Edo: **Aleluia.**

V/. Maite dot Jauna,
entzun dau-eta nire erregu-oihua,
makurtu dau-eta nigana belarria,
dei egin deutsadan egunean. R/.

V/. Heriotza-lokarriek inguratu ninduen,
Herio-lezako sareak harrapatu;
estu eta larri nintzan.
Baina dei egin neutsan Jaunaren izenari:
«Arren, Jauna, atara nagizu onik». R/.

V/. Errukiorra eta zintzoa da Jauna,
onbera gure Jainkoa.
Jaunak zaintzen ditu apalak;
lur jota nengoan, eta salbatu nau. R/.
V/. Bai, libratu deust bizia heriotzatik,
begiak malkotik, oinak jaustetik.
Jaunaren aurrean ibiliko naz
bizidunen lurraldean. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Fedea, bera bakarrik, egintzarik barik, hilda dago.*

Santiago Apostoluaren epistolatik

*St* 2, 14-18

Ene senideok: Zertako dau batek «nik badot fedea» esatea, egintzetan ez badau azaltzen? Holako fedeak salbatu ete leike?

Anaiaren nahiz arrebaren batek zer jantzirik edota eguneroko janik ez badau, eta zuetako batek esaten badeutso: «Zoaz bakean, berotu zaitez eta asetu», baina behar dauan laguntza emoten ez, zertako balio dau horrek? Halantxe fedea be: bera bakarrik, egintzarik barik, hilda dago.

Norbaitek esan leike: «Zuk fedea dozu; nik, barriz, egintzak». Bada, nik esaten deutsut: Erakutsi egidazu

egintzarik bako zeure fedea, eta nik egintzen bidez erakutsiko deutsut neure fedea.
Jaunak esana.

## Aleluia

*Ga* 6, 14

R/. **Aleluia.**
V/. Jainkoak libratu nagiala harrotzetik,
gure Jaunaren kurutzean izan ezik,
kurutze horri esker,
mundua hilda dago-eta niretzat eta ni munduarentzat. R/.

## EBANJELIOA

*Zu Mesias zara.*
*Gizonaren Semeak asko sufridu behar dau.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 8, 27-35

Aldi haretan, Feliperen Zesarea inguruko auzoetara abiatu zan Jesus bere ikasleekin. Bidean itaun hau egin eutsen ikasleei: «Ni nor nazala dino jenteak?» Hareek erantzun eutsoen: «Batzuk Joan Bateatzailea zarala; beste batzuk Elias; besteek profetaren bat». Jesusek barriro itaundu eutsen: «Eta zuek, nor nazala dinozue?» Pedrok

erantzun: «Zu Mesias zara».

Inori ez esateko agindu eutsen Jesusek zorrotz. Orduan, irakasten hasi jaken Gizonaren Semeak asko sufridu beharra ebala; zahar, abadeburu eta lege-maisuek txartzat joko ebela eta hil; eta hiru egunen buruan biztuko zala. Argi eta garbi egiten eutsen berba honetaz.

Orduan, Pedro, Jesus aparte hartuta, gogor egiten hasi jakon. Baina Jesusek, bihurtu eta ikasleei begira, gogor eraso eutson Pedrori, esanez: «Alde nire ondotik, Satanas! Zure asmoak ez dira Jainkoarenak, gizakiarenak baino».

Jesusek jenteari eta ikasleei dei egin eta esan eutsen: «Nire ondorik etorri gura dauanak uko egin beio bere buruari, hartu begi bere kurutzea eta jarraitu beist. Izan be, bere bizia gorde gura dauanak galdu egingo dau; bere bizia Nigaitik eta Barri Onagaitik galtzen dauanak, ostera, gorde egingo dau.

Jaunak esana.

## URTEAN ZEHARREKO XXIV.

# DOMEKA
## C urtean

## I. Irakurgaia

*Jaunak atzera egin eban*
*bere herriari egindako amenazutik.*

Urteera liburutik

*Ur* 32, 7-11. 13-14

Egun hareetan, Jaunak esan eutson Moisesi: «Jatsi zaitez menditik, pekatu egin dau-eta Egiptotik atara zenduan zeure herriak. Laster asko okertu dira agindu neutsen bidetik. Zekor-irudia egin dabe, eta haren aurrean ahuspeztu eta opariak eskeini deutsoez, esanez: "Hau da zure jainkoa, Israel, Egiptotik atara zinduzana"».

Jaunak esan eutson gainera: «Ikusten dot herri hau burugogor dala; itzi egidazu, bada; nire hasarrea horreen aurka sutu eta hondatu egingo ditut, eta zugandik herri handi bat sortuarazoko dot».

Moisesek, ostera, honan otoitz egin eutson Jaunari, bere Jainkoari: «Jauna, zelan jarriko zara, bada, hasarre-sutan, hain ahalmen handiz eta esku indartsuz Egiptotik atara zenduan zeure herri honen aurka?

Gogoratu egizuz zeure zerbitzariak, Abraham, Isaak eta Israel, eta zeure buruagaitik hareei egin zeuntsen zin hau: "Zuen ondorengoak zeruko izarrak baizen ugari egingo ditut, eta agindu deutsuedan lurralde hau guztia betiko ondaretzat emongo deutset"».

Halan, Jaunak atzera egin eban bere herriari egindako amenazutik.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 51 [50], 3-4. 12-13. 17 eta 19 (R/. ik. Lk 15, 18)

R/. **Jagi eta banoa neure aitagana.**

V/. Erruki nitaz, ene Jainko, zeure maitasunaz,
hondatu nire hobena zeure neurribako errukiaz.
Garbitu nagizu zeharo neure errutik,
garbitu neure pekatutik. R/.

V/. Ene Jainko, sortu bihotz garbia nigan,
barritu arnasa sendoa nire barruan.
Ez nagizu bota zeure aurretik,
ez kendu niri zeure arnasa santua. R/.

V/. Edegi, Jauna, nire ezpanak,
eta nire ahoak iragarriko dau zure gorespena.
Damuz hausitako espiritua da

Jainkoak nahi dauan sakrifizioa;
Zuk ez dozu gitxiesten, ene Jainko,
bihotz hausia eta umildua. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Jesu Kristo pekatariak salbatzera etorri zan.*

San Paulo Apostoluak Timoteori egindako lehenengo epistolatik

*1 Tm* 1, 12-17

Anaia maitea: Eskerrak emoten deutsadaz Kristo Jesus geure Jaunari, bere apostolu-zerbitzua nire gain izteko fidagarri aurkitu naualako eta indarra emon deustalako niri, beraren kontra biraolari, pertsegitzaile eta iraintzaile izan nintzan honi; baina nitaz errukitu egin zan Jainkoa, neu sinisbakoa izanik ez nenkian-eta zer egiten nenbilen. Eta gainezka agertu eustan geure Jaunak bere onginahia, Kristo Jesusengan dogun sinismena eta maitasuna emonez.

Sinisgarria eta guztiok onartzekoa da doktrina hau: Kristo Jesus pekatariak salbatzera etorri zala mundura. Eta inor ez ni baino pekatariagorik; horrexegaitik, hain zuzen, lortu neban errukia, Jesu Kristok bere pazientzia

lehenengo nigan erakutsi egian eta betiko bizia izateko harengan sinistuko ebenentzat eredu izan nendin.

Gizaldien Erregeari, beraz, Jainko hilezkor, ikusezin eta bakarrari, ospe eta aintza gizaldi eta gizaldietan. Amen.

Jaunak esana.

## Aleluia

*2 Ko* 5, 19

R/. **Aleluia.**

V/. Jainkoak ziharduan Kristogan mundua beragaz adiskidetzen,

eta geuri emon deusku adiskidetzearen mezua. R/.

## EBANJELIOA

Ebanjelio hau era laburrean ik. honen ondoren.

*Jainkoak be poz handiagoa hartzen dau*
*bihotz-barritzen dan pekatari batengaitik.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 15, 1-32

Aldi haretan, zergalari eta pekatariak hurreratzen jakozan Jesusi, entzutera. Eta fariseuak eta lege-maisuak marmarrean hasi ziran, esanez: «Honek ondo hartzen ditu pekatariak, eta jan be egiten dau eurakaz».

Orduan, parabola hau esan eutsen Jesusek: «Zuetariko bat, ehun ardi izan eta bat galtzen bajako, ez ete da beste laurogeta hemeretziak larrean itzirik, galdutakoaren bila joaten aurkitu arte? Eta, aurkitzean, lepoan hartzen dau poz-pozik eta, etxera heltzean, lagunak eta auzokoak batu eta esaten deutse: “Poztu zaiteze nigaz, galdutako ardia aurkitu dot-eta”.

Ba, egia esan: «Jainkoak be poz handiagoa hartzen dau bihotz-barritzen dan pekatari bategaitik bihotz-barritu beharrik ez daben laurogeta hemeretzi zintzoakaitik baino.

Eta zein emakumek, zidarrezko hamar txanpon izan eta bat galtzen bajako, ez dau, kriseilua biztuta, etxea garbitu eta ardura guztiz bilatzen aurkitu arte? Eta aurkitzean, adiskideak eta auzokoak batu eta esaten deutse: “Poztu zaiteze nigaz ze, aurkitu dot galdutako txanpona”.

Hara zer dinotsuedan: Bardin poztuten da Jainkoa bere aingeruakaz bihotz-barritzen dan pekatari bategaitik».

Beste hau be esan eutsen Jesusek:

«Gizon batek seme bi zituan. Gazteenak esan eutson aitari: “Aita, emoidazu dagokidan ondarea”. Eta aitak banatu egin eutsezan ondasunak. Handik egun gitxira, semerik gazteena, zituan guztiak baturik, urrutiko herrialde batera joan zan, eta han, nasaikerian biziz, ondasun guztiak jan zituan.

Dan-dana eralgi ebanean, gosete handia sortu zan herrialde haretan eta beharrizana sentitzen hasi zan. Orduan, herrialde haretako bategana joan eta haren morroi jarri zan, eta harek bere lurretara bialdu eban txarrizain. Txarriek jaten ebezan ezkurrez sabela betetzeko gogoa sortzen jakon ze, ez eutson inork jaten emoten.

Orduan, bere senera bihurtuta, esan eban: “Hamaikatxu behargin bada nire aitarenean, ogi nahikorik daukala, eta ni hemen gosekilik. Jagi, aitagana joan eta esango deutsat: Aita, pekatu egin dot Jainkoaren eta zure aurka. Ez dot gehiago seme izena merezidu. Hartu nagizu zeure beharginetariko bat lez”. Eta jagi eta aitagana abiatu zan.

Oraindino urrun egoala, ikusi eban aitak eta erruki izan eban, eta, lasterka

joanda besarkatu eta mosuka hasi jakon. Semeak esan eutson: “Aita, pekatu egin dot Jainkoaren eta zure aurka. Ez dot gehiago seme izenik merezidu...”.

Aitak, ostera, esan eutsen morroiei: “Atara behingoan soinekorik ederrena eta jantzi egiozue; ipini eraztuna eskuan eta jantzi oinetakoak; ekarri zekor loditua eta hil; egin daigun jai-bazkaria ze, nire seme hau hilda egoan eta barriro bizi da, galduta egoan eta aurkitu egin dogu”. Eta jaia hasi eben.

Semerik zaharrena soloan zan. Etxera hurreratzean, soinua eta dantzak entzun zituan, eta, morroi bati deituta, zer gertatzen zan itaundu eutson. Morroiak erantzun: “Zure anaia etorri da eta zuen aitak zekor gizendua hil dau, semea onik bereganatu daualako”. Seme zaharrena itzel hasarratu zan,
eta ez eban sartu gura. Urten eban aitak eta erreguka hasi jakon. Baina harek erantzun eutson aitari: “Hainbeste urte da zure zerbitzuan nagoala, zure agindurik behin be huts egin barik, eta ez deustazu sekula auma bat be emon lagun artean jateko, eta

hori zure semeori, emagalduakaz zure ondasunak jan dituan hori, etorri danean, zekor gizendua hil deutsazu”. Aitak erantzun eutson: “Seme, zu beti zagoz neugaz, eta nirea dan guztia zeurea dozu. Baina egoki zan jai egitea eta poztutea ze, zure anaia hau hilda egoan eta barriro bizi da, galduta egoan eta aurkitu egin dogu”»

Jaunak esana.

---

Ebanjelioa era laburrean.

*Jainkoak be poz handiagoa hartzen dau bihotz-barritzen dan pekatari batengaitik.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 15, 1-10

Aldi haretan, zergalari eta pekatariak hurreratzen jakozan Jesusi, entzutera. Eta fariseuak eta lege-maisuak marmarrean hasi ziran, esanez: «Honek ondo hartzen ditu pekatariak, eta jan be egiten dau eurakaz».

Orduan, parabola hau esan eutsen Jesusek: «Zuetariko bat, ehun ardi izan eta bat galtzen bajako, ez ete da beste laurogeta hemeretziak larrean itzirik, galdutakoaren bila joaten aurkitu arte?

Eta, aurkitzean, lepoan hartzen dau poz-pozik eta, etxera heltzean, lagunak eta auzokoak batu eta esaten deutse: “Poztu zaiteze nigaz, galdutako ardia aurkitu dot-eta”.

Ba, egia esan: «Jainkoak be poz handiagoa hartzen dau bihotz-barritzen dan pekatari bategaitik bihotz-barritu beharrik ez daben laurogeta hemeretzi zintzoakaitik baino.

Eta zein emakumek, zidarrezko hamar txanpon izan eta bat galtzen bajako, ez dau, kriseilua biztuta, etxea garbitu eta ardura guztiz bilatzen aurkitu arte? Eta aurkitzean, adiskideak eta auzokoak batu eta esaten deutse: “Poztu zaiteze nigaz ze, aurkitu dot galdutako txanpona”.

Hara zer dinotsuedan: Bardin poztuten da Jainkoa bere aingeruakaz bihotz-barritzen dan pekatari bategaitik».

Jaunak esana.